# Urtean Zeharreko IX. astelehena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Tobitek leial eta zuzen jokatzen eban.*

Tobit liburuaren hasiera

*Tb* 1, 3; 2, 1a-8

Nik, Tobitek, leial eta zuzen jokatu izan dot neure bizitza osoan eta erruki-egintza asko egin izan deutset Asiriako Ninibera nigaz batera erbesteratu ebezan senide eta herritarrei.

Pentekoste izeneko gure jaiegunean, Asteetako Jai santuan, jatordu ederra ipini eusten. Jesarri nintzan janari bikainez betea egoan mahaian, eta nire seme Tobiasi esan neutson: «Seme, zoaz eta ikusi ea aurkitzen dozun Ninibera erbesteratutako gure senideen artean Jaunaz bihotz-bihotzez gogoratzen dan behartsuren bat, eta ekarri egizu gugaz bazkaltzera. Bihurtu arte itxarongo deutsut». Urten eban Tobiasek behartsuaren bila; baina, bihurtzean, esan eustan: «Aita!». Esan neutson nik: «Zer, seme?» Eta Tobiasek: «Gure herritar bat hil dabe; ito egin dabe eta hor datza oraindino plaza nagusian botata». Behingoan jagi

eta, janaria ikutu be egin barik, plazara joan nintzan gorpua jasotzera, eta gela baten itzi neban, eguzkia sartzean lur emoteko. Gero, bihurtu, garbikuntza egin eta nahigabeturik bazkaldu neban. Amos profetak Betelen kontra esan ebazan berbak gogoratu nebazan: «Zuen jaiak dolu bihurtuko dira eta zuen abestiak negar-kanta». Eta negar egin neban.

Gero, eguzkia sartzean, zuloa egin eta lur emon neutson gorpuari. Auzokoek kritikatu egiten ninduen, esanez: «Ez dau oraindino ikasi! Holako zeozergaitik ibili jakozan lehen be bila heriotzara kondenatzeko, eta ihes egin eban; eta orain barriro hildakoei lur emoten dabil».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 112 [111], 1-2. 3-4. 5-6 (R/. 1a)

R/. **Zorionekoa Jaunari begirune deutsana.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsana,
haren aginduak biziro maite dituana.
Ahaltsua izango da lurraldean haren

jatorria,
bedeinkatua zuzenen ondorea. R/.
V/. Haren etxean ondasunak ugari izango dira,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau.
Ilunpean argia lez da zuzenentzat:
errukiorra, bihozbera eta zintzoa. R/.
V/. Nasai bizi da errukitu eta emoten dauana,
bere arazoak zuzen atontzen dituana
ez da inoiz kili-kolo egongo;
zintzoaren gogorapenak beti bizirik dau iraungo. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Agindutako ondasun baliotsu eta bikainak emon deuskuz,*
*horreen bidez Jainkoaren izaeran parte izan dagigun.*

San Pedro Apostoluaren bigarren epistolaren hasiera

*2 P* 1, 2-7

Senide maiteok: Grazia eta bakea oparo izan dagizuela, Jainkoaren eta Jesus gure Jaunaren ezagutzari esker.

Jainkoak, bere ahalmenaz, erlijino-bizitzarako behar dan guztia emon deusku, bere aintzaz eta indarraz deitu ginduzan Jesus ezagutuazoz. Holan,

agindutako ondasun baliotsu eta bikainak be emon deuskuz, horreen bidez Jainkoaren izaeran parte izan dagigun, grina txarrek munduan eragiten daben ustelkeriari ihes eginez.

Horregaitik, ahalegindu zaiteze gogoz zeuen fedeagaz batera bertutea izaten, bertuteagaz ezagutza, ezagutzagaz neurritasuna, neurritasunagaz eroapena, eroapenagaz jainkozaletasuna, jainkozaletasunagaz senide-batasuna eta senide-batasunagaz maitasuna.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 91 [90], 1-2. 14-15b. 15c-16 (R/. 2b)

R/. **Ene Jainko, Zugan dot konfiantza.**

V/. Goi-goikoaren aterpean bizi zaran horrek,
gaua Ahaltsuaren kerizpean emoten dozun horrek,
esaiozu Jaunari: «Zu nire babesleku eta gaztelu,
ene Jainko, Zugan dot konfiantza». R/.

V/. «Onik atarako dot, niri lotua dagoalako,
toki seguruan jarriko, nire izena

autortzen daualako.
Dei egingo deust, eta Nik erantzungo;
beragaz izango nau larrialdian. R/.
V/. Libratuko dot eta ospez jantziko.
Bizitza luzea eta betea emongo deutsat
eta neure salbazinoa gozatuazoko». R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Ap* 1, 5ab

R/. **Aleluia.**
V/. Jesu Kristo, testigu leiala,
hilen arteko lehenengo biztua,
Zuk maite izan gaituzu
eta zeure odolaz geure pekatuetatik askatu. R/.

## EBANJELIOA

*Hartu eben seme maitea,*
*hil, eta mahastitik kanpora bota eben.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 1-12

Aldi haretan, Jesus parabola bidez hitz egiten hasi jaken abadeburuei eta herriko zaharrei: «Gizon batek mahastia landatu eban eta hesiz inguratu, bertan dolarea egin eta torrea eregi eban. Gero, nekazari batzuri

errentan itzirik, urrutira joan zan.

Bere sasoian, morroi bat bialdu eutsen nekazariei, mahastiko frututik egokon partea jasotzera; baina hareek morroiari heldu, jo eta esku hutsik bialdu eben. Barriro beste morroi bat bialdu eutsen; berau be buruan jo eta irainez bete eben. Beste bat be bialdu eutsen geroago, eta hil egin eben. Ondoren, beste asko bialdu eutsezan, eta batzuk jo eta besteak hil egin zituen.

Baeban ondino beste nor edo nor, bere seme maitea, eta haxe bialdu eutsen azkenik, bere barrurako esanez: “Izango deutsoe begirunea nire semeari”. Nekazariek, ostera, esan eutsoen alkarri: “Oinordekoa dok! Hil dagigun eta mahastiaren jabe izango gaituk”. Hartu, hil eta mahastitik kanpora bota eben.

Zer egingo ete dau mahasti-jaubeak? Joan eta garbitu egingo ditu nekazari horreek, eta mahastia beste batzuren esku itziko. Ez ete dozue ha Liburu Santuetakoa irakurri:

“Etxegileek baztertutako harria giltzarri

gertatu da.
Jaunak egin dau hori, gure begien harrigarri”?»

Abadeburu eta herriko zaharrak Jesus atxilotu nahian ebiltzan, ze, ondo ederto jaubetu ziran eurekaitik esan ebala parabola ha. Baina jentearen bildurrez, itzi eta alde egin eben.

Jaunak esana.

________________________________________2

# Urtean Zeharreko IX. martitzena
## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Itsu gelditu nintzan.*

Tobit liburutik

*Tb* 2, 9-14

Ni, Tobit, Pentekoste-gauean, hildakoari lur emon ondoren, etxartera joan eta horma ondoan etzun nintzan aurpegia estaldu barik, bero egoan-eta. Ez nintzan ohartu kurloiak egozala horman, nire gainean. Hareen zirin beroa begietara jausi eta orban zuriek urten eusten. Ibili nintzan osagileekin, baina zenbat eta erremedio gehiago

jarri, orduan eta gitxiago ikusten neban orbanakaitik, itsu gelditzeraino. Lau urtez egon nintzan itsu. Nire senideak atsekabeturik egozan nigaitik, eta Ahikarrek urte bian mantendu ninduan, Elimaidara joan zan arte.

Gauzak holan, Ana, nire emaztea, kanporako lanean hasi zan, emakumeek ohi daben ehungintzan. Berak lana amaiturik eroatean, bezeroek ordaindu egiten eutsoen. Behin baten, Distros hilaren zazpian, oihala amaitu eta bezeroei eroan eutsenean, lansari osoa ordaindu eutsoen eta, gainera, auma bat emon erregalu. Etxera sartzean, auma beeka hasi zan. Orduan, dei egin eta esan neutson emazteari: «Nondik etorri da auma hori? Ez da, bada, lapurtua izango? Bihurtu bere jaubeei, ez jaku-eta zilegi ostutako ezer jatea». Emazteak erantzun eustan: «Erregalatu egin deuste, lansaria emoteaz gainera». Nik, ostera, ez neutson sinisten eta esan eta esan nenbilen jaubeei bihurtzeko. Hasarratu be egin nintzan beragaz hori zala-eta. Orduan, emazteak esan eustan: «Non dira zure erruki-egintzak? Non zure egite onak?

Argi asko dago orain zertako balio izan deutsun!»
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 112 [111], 1-2. 7-8. 9 (R/. ik. 7c)

R/. **Sendo dau zintzoak bihotza, Jaunaz fidaturik.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsana,
haren aginduak biziro maite dituana.
Ahaltsua izango da lurraldean haren jatorria,
bedeinkatua zuzenen ondorea. R/.

V/. Ez deutse barri txarrei bildurrik,
sendo dau bihotza, Jaunaz fidaturik.
Seguru dau bihotza, bildurrik barik;
azkenean, arerioen porrota ikusiko dau. R/.

V/. Esku betean emoten deutse behartsuei,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau,
ohorez jasoko dau bekokia. R/.

## II. urtean

## I. Irakurgaia

*Zeru barriak eta lur barria itxaroten doguz.*

San Pedro Apostoluaren bigarren epistolatik

*2 P* 3, 12-15a. 17-18

Senide maiteok: Bizi zaiteze Jainkoa etorriko dan egunaren zain eta egin lan, lehenbailehen heldu dadin. Egun haretan, sutan desegingo dira zeruak, eta lurraren osagaiak kiskalduta ezereztuko. Guk, ostera, Jaunak agindu lez, zuzentasunaren bizileku diran zeru barriak eta lur barria itxaroten doguz.

Beraz, maite-maiteok, honeek itxaroten dozuezala, ahalegindu zaiteze Jainkoagaz bakean bizitzen, garbi eta errurik barik haren aurrean. Hartu gogoan Jaunak gugaz dauan pazientzia gure salbazinorako dala.

Zuek, ene maiteok, jakinaren gainean zagoze. Beraz, zabiltze kontuz, gaizto horreen eretxi okerrek liluraturik, zeuen sendotasunetik jausi ez zaitezen. Ahalegindu zaiteze Jesu Kristo gure Jaun eta salbatzailea gero eta gehiago ezagutzen eta haren onginahia zeuenganatzen. Aintza berari, orain eta betiereko egunera arte. Amen.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 90 [89], 2. 3-4. 10. 14 eta 16 (R/. ik. 1)

R/. **Jauna, gure ihesleku Zeu izan zara**

**gizalditik gizaldira.**
V/. Mendiak jaio baino lehen,
lurra eta mundua sortu baino lehen,
Jainko zara Zu betidanik betidaino. R/.
V/. Gizakia hautsera bihurtuazoten dozu,
esanez: «Bihurtu lehenera, gizakiok».
Bai, mila urte zure begietan
atzo igaro zan eguna adina,
gaualdi bat adina. R/.
V/. Gure bizitza hirurogeta hamar urtekoa,
onenean be laurogeikoa;
baina bizi-lehia guztia neke eta atsekabe,
bizitza arin doa-eta, gu hegaz goaz. R/.
V/. Asetu gagizuz goizero zeure maitasunaz,
poztu gaitezan eta zoriontsu izan geure egun guztietan.
Ikusi begie zure zerbitzariek zure egintza,
eta hareen seme-alabek zure dirdaia. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Ef* 1, 17-18

R/. **Aleluia.**
V/. Jesu Kristo gure Jaunaren Aitak

argitu daizala gure barruko begiak,
jakin daigun zer itxarotera dei egin deuskun. R/.

## EBANJELIOA

*Emoiozue Zesarri Zesarrena,*
*eta Jainkoari Jainkoarena.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 13-17

Aldi haretan, fariseuen eta Herodesen alderdiko batzuk bialdu eutsoezan Jesusi, berbaren baten harrapatzeko asmoz. Etorri eta esan eutsoen: «Maisu, badakigu egiazale zarana eta ez deutsula ardurarik inoren zeresanak; Zuk ez deutsazu gizakiaren itxurari begiratzen, ezpada ze Jainkoaren bidea behar dan moduan irakasten dozu. Bidezko da Zesarri zerga ordaintzea ala ez? Ordaindu behar deutsagu ala ez?»

Baina Jesusek, hareen azpikeriaz konturaturik, esan eutsen: «Zergaitik zatorkidaze ziria sartzen? Ekarri txanpon bat, ikusteko». Ekarri eutsoen, eta Jesusek itaundu eutsen: «Norenak dira irudi eta izen honeek?» Hareek erantzun: «Zesarrenak».

Jesusek, orduan: «Emoiozue Zesarri

Zesarrena eta Jainkoari Jainkoarena».
Eta zurtz eginda gelditu ziran.
Jaunak esana.

3

# Urtean Zeharreko IX. eguaztena
## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Bien otoitzak entzun ebazan*
*Jainko aintzatsuak.*

Tobit liburutik

*Tb* 3, 1-11a. 16-17a

Egun hareetan, atsekabeturik eta negar-zotinez, otoitzean hasi nintzan aieneka:

«Zuzena zara, Jauna, eta zuzenak dira zure egintza guztiak,
zure jokabide guztiak errukiorrak eta leialak;
zuk epaitzen dozu mundua.
Orain, Jauna, gogoratu zaitez nitaz, begiratu egidazu
eta ez zigortu ni neure pekatu eta hutsegiteakaitik,
ezta neure gurasoenakaitik be,
pekatu egin eben-eta;
zure aginduak bete ez genduzalako

itzi deutsezu arerioei guri lapurretak egiten,
gu erbesteratzen eta hiltzen;
burla, barre eta irain egiten deuskue
sakabanatu gaituzun nazino guztietan.

Bai, zuzenak dira zure zigor guztiak,
neure pekatuakaitik eta gurasoenakaitik
ezartzen deustazuzan zigorrak,
ez doguz-eta zure aginduak bete
eta ez dogu leial jokatu zure aurrean.
Orain, beraz, egizu nigaz nahi dozuna, kendu egidazu bizia,
lur-azaletik desagertu eta hauts bihurtu nadin.
Hobe dot hil bizi baino, irain guzurrezkoak entzuten ditudalako
eta guztiz nahigabetua nagoalako.
Libratu nagizu, Jauna, larrialdi honetatik,
Itzi egidazu betiko egoitzara joaten;
ez ezkutatu niri zeure aurpegia, Jauna.
Bai, hobe dot hil, neure bizitzan hainbeste miseria ikusi
eta halako irainak entzun baino».

Egun berean, Sarak be, Mediako

Ekbatana urian bizi zan Raguelen alabeak, bere aitaren neskameetako baten irainak entzun behar izan ebazan. Izan be, Sara zazpi aldiz ezkondua egon zan; baina Asmodeo deabru gaiztoak hil egin eutsozan senarrak, ohitzen dan lez honeek beragaz alkartu baino lehen. Neskameak esan eutson: «Zeuk hiltzen dozuz senarrak. Zazpi izan dozuz eta ez zara hareetako bakar batez be gozatu. Zergaitik zigortzen gaituzu hareek hil dirala-eta? Zoaz zeu be eurekin. Ez daigula sekula ikusi zure seme-alabarik». Sarak, atsekabez beterik eta negarrez, gora igon eban, bere aitaren gelara, bere burua urkatzeko asmoz. Baina pentsatzen hasi eta esan eban bere kautan: «Ez, izan be jenteak gure aita irainduko leuke-eta, esanez: "Hain maite zenduan alaba bakarra urkatu egin da bere zoritxarrean". Eta hilobira bialduko neuke aita zahartzaroan, atsekabearen atsekabez. Neure burua urkatu baino hobe dot Jaunari heriotza eskatu; holan ez dot aurrerantzean irainak entzun beharrik izango». Eta une haretantxe, eskuak leihorantz luzatuz, otoitz egin eban.

Aldi haretan, bai Tobiten eta bai Sararen, bien otoitzak entzun ebazan Jainko aintzatsuak eta Rafael aingerua bialdu eban biak osatzera.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 25 [24], 2-3. 4-5b. 6 eta 7cd. 8-9 (R/. 1)

R/. **Jauna, Zugana jasotzen dot gogoa.**

V/. Ene Jainko, Zugan dot konfiantza,
ez nadila lotsagarri izan;
ez daitezala arerioak nire lepotik poztu;
ez daitezala lotsatu Zugan itxaroten dabenak;
bai, ostera, hutsagaitik baztertzen zaituenak. R/.

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zeu zara-eta nire Jainko salbatzailea. R/.

V/. Izan gogoan, Jauna, zeure errukia eta maitasuna,
betidanikoak dira-eta.
Gogoratu nitaz zeure maitasunean,
zeure ontasunari dagokionez, Jauna. R/.

V/. Ona eta zuzena da Jauna,

bidea erakusten deutse pekatariei.
Apalak zuzenbidez daroaz,
bere bidea erakusten deutse apalei. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Indarbarritu egizu*
*nik eskuak ezartzean Jainkoak emon eutsun dohaia.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolaren hasiera

*2 Tm* 1, 1-3. 6-12

Nik, Paulok, Jainkoak halan nahirik, Kristo Jesusen bidez agindu jakun bizia iragartzeko Jesu Kristoren apostolu nazan honek, zuri, nire seme maite Timoteori: grazia, errukia eta bakea Jainko Aitagandik eta Kristo Jesus gure Jaunagandik.

Eskerrak emoten deutsadaz, nire asabek lez bihotz garbiz zerbitzen dodan Jainkoari, eta gogoan zaitut eten barik, gau eta egun, neure otoitzetan.

Gomendatzen deutsut indarbarritu dagizula nik eskuak ezartzean Jainkoak emon eutsun dohaia, Jainkoak ez deusku-eta bildurti egiten gaituan espiritua emon, indarra eta maitasuna emoten eta geure buruaren jaube

egiten gaituan espiritua baino. Ez izan, bada, gure Jauna autortzeko lotsarik, ezta lotsatu be harengaitik kartzelan dagoan honetaz; bestela baino, Jainkoaren indarraz fidaturik, eroan egizuz nekeak nigaz batera Barri Onaren alde. Harek salbatu ginduzan eta dei egin euskun biziera santura, ez gure egiteakaitik, bere erabagiagaitik baino eta gizaldi guztiak baino lehen Kristo Jesusengan emon euskun graziagaitik.

Grazia hau orain agertu da, Kristo Jesus gure Salbatzailea munduan azaldu danean; honek heriotza ezereztu dau eta bizia eta hilezkortasuna argitu Barri Onaren bidez. Barri On horren predikari, apostolu eta irakasle egin nau Jainkoak. Hori da nire sufrimentuen arrazoia; baina ez naz lotsatzen, badakit-eta norengan jarri dodan uste ona eta ziur nago, badauala harek indarrik nire esku itzi dauan fede-gordailua azken egunera arte zaintzeko.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 123 [122], 1. 2 (R/. 1)

R/. **Zugana jasotzen ditut, Jauna, begiak.**
V/. Zugana jasotzen ditut begiak,
zeruan errege zaran horrengana. R/.
V/. Zelan morroien begiak nagusien eskuetara
eta neskamearen begiak etxekoandrearen eskuetara,
halan dagoz gure begiak Jaunagana,
gure Jainkoagana,
gutaz errukitu dadin arte. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 11, 25a. 26

R/. **Aleluia.**
V/. Neu naz biztuera eta bizia, dino Jaunak;
Nigan sinisten dauana ez da betiko hilko. R/.

### EBANJELIOA

*Ez da hilen Jainkoa, biziena baino.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 18-27

Aldi haretan, saduzear batzuk etorri jakozan Jesusi (saduzearrek ez dabe onartzen hildakoak biztuten diranik).

Eta itaundu eutsoen: «Maisu, Moisesek idatzi euskun: “Norbaiti anaia hiltzen bajako, emaztea seme-alabarik barik itziz, ezkondu bedi alargunarekin, anaiari ondorengoa emoteko”.

Behin baten, baziran zazpi anaia. Zaharrena ezkondu eta seme-alabarik barik hil zan. Bigarrena alargunarekin ezkondu zan, eta seme-alaba barik hil zan; bardin hirugarrena be. Holan, zazpirak ondorengorik barik hil ziran. Azkenik, hil zan emakumea be. Biztuerakoan, hildakoak biztuko diranean, zeinen emaztea izango da, ze, zazpirek izan eben emazte?»

Jesusek erantzun eutsen: «Ez ete zabiltze oker, Liburu Santuek dinoen hori eta Jainkoaren ahalmena ezagutzen ez dituzuelako? Izan be, hildakoak biztutean, ez da inor ezkonduko; zeruko aingeruak lez izango dira danak. Gainera, hildakoen biztueraz, ez ete dozue irakurri Moisesen liburuan, sasia surtan egoaneko pasartean, Jainkoak berak zelan esaten deutsan: “Ni Abrahamen Jainkoa, Isaaken Jainkoa eta Jakoben Jainkoa naz”? Ez da hilen Jainkoa, biziena baino. Oker zagoze

oso».
Jaunak esana.



## Urtean Zeharreko IX. eguena

### I. urtean

**I. IRAKURGAIA**

*Erruki zakiguz*
*eta egizu heldu gaitezala biok alkarregaz zahartzarora.*

Tobit liburutik

*Tb* 6, 10-11; 7, 1. 9-17; 8, 4-9a

Egun hareetan, Median sartu eta Ekbatana uritik hurrean egozala, Rafael aingeruak esan eutson mutilari: «Tobias anaia!» «Zer?», erantzun eutson Tobiasek. Eta aingeruak: «Gaurko gaua Raguelen etxean emongo dogu; zure senidea da eta Sara izeneko alaba bat dau».

Ekbatanara heldu ziranean, Tobiasek esan eutson lagunari: «Azarias anaia, eroan nagizu ahalik eta zuzenen gure senide Raguelen etxera». Eroan eban; etxeko atarian jesarrita aurkitu eben Raguel eta hareek agurtu eben lehenengo. Raguelek erantzun eutsen: «Zoriona eta osasuna zuei be, anaiok. Ondo etorri!» Eta etxera sartu ebazan.

Raguelek ahari bat hilazo eban, eta oso ondo hartu ebazan.

Garbikuntzak egin eta mahaian jesarri ziranean, Tobiasek esan eutson Rafaeli: «Azarias anaia, esaiozu Ragueli emon deidala neure senide Sara emaztetzat». Entzun eban hori Raguelek eta esan eutson gazteari: «Jan eta edan, eta gau gozoa igaro. Zuri dagokizu, ene anaia, beste inori baino lehen, nire alaba Saragaz ezkontzea. Nik be ezin deutsat zuri beste inori emon, zu zaitut-eta seniderik hurkoena. Baina argi hitz egingo deutsut, seme. Gure herritarren arteko zazpi gizasemegaz ezkondu da eta ezkon-gauean bertan hil ziran danak. Baina, tira, jan eta edan, seme, eta Jauna arduratuko da zuetaz». Tobiasek, ostera, esan eban: «Ez dot jango eta edango, zuk nire eskariaz erabagia hartu arte». Raguelek erantzun eutson: «Ondo da. Moisesen liburuko aginduaren arabera, zeuri emon behar jatzu, eta halan erabagitzen dau Jainkoak be. Hartu egizu, bada, emaztetzat; hemendik aurrera, senar-emazte zarie betiko. Zeruko Jainkoak lagun egin deizuela

gau honetan, seme; agertu deizuela errukia eta emon bakea».

Raguelek bere alaba Sarari dei egin eutson eta, etorri zanean, eskutik hartu eta Tobiasi emon eutson, esanez: «Hartu egizu emaztetzat, legearen eta Moisesen liburuko aginduaren arabera, zeuri emon behar jatzu-eta. Hartu eta eroan egizu onik zeure aitaren etxera. Eta zeruko Jainkoak gidatu zagiezala bakean». Gero, amari deitu, idazteko orria ekarriazo eta ezkon-agiria idatzi eban, Moisesen legeak agindu lez Sara Tobiasi emaztetzat emonez. Ondoren, jaten eta edaten hasi ziran.

Geroago, Raguelek bere emazte Ednari dei egin eta esan eutson: «Emazte, prestatu egizu beste gelea eta eroan Sara bertara». Joan zan Edna eta, senarrak esan lez gelea prestatu ebanean, bertara eroan eban alabea. Eta negarrez hasi zan harengaitik. Negar anpuluak sikatuz, esan eutson alabeari: «Izan bihotz, alaba! Zeruko Jainkoak bihurtu dagiala poz zure nahigabea. Izan bihotz!» Eta urten egin eban.

Jagi zan Tobias ohetik eta esan eutson

Sarari: «Jagi, ene emazte, otoitz egin eta eskatu deiogun Jaunari errukitu dadila gutaz eta emon deigula osasuna». Jagi zan, bada, Sara eta otoitzean hasi ziran biak, osasuna emon egiela Jaunari eskatuz. Honan egin eben otoitz:

«Bedeinkatua Zu, Jauna, gure asaben Jainkoa
eta bedeinkatua zure izena gizaldien gizaldietan!
Bedeinkatu zagiezala zeruek eta izaki guztiek gizaldi guztietan!
Zeuk egin zenduan Adam,
eta Eva emazte emon zeuntsan lagun eta euskarri,
eta bietatik sortu zan giza arraza.
Esan zenduan: "Ez da ona gizona bakarrik egotea;
egin deiodan berari dagokion laguna".
Badakizu ez nazana nire senide honegaz ezkontzen
grina txarrak bultzatuta, asmo zuzenez baino.
Erruki zakiguz, bada,
eta egizu heldu gaitezala biok alkarregaz zahartzarora».

Eta biek aho batez esan eben: «Amen, amen!» Eta oheratu egin ziran, gaua igarotzeko.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 128 [127], 1-2. 3. 4-5 (R/. 1a)

R/. **Zorionekoa Jaunari begirune deutsana.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsana
eta haren bideetan dabilena!
Zeure lanaren frututik dozu jango,
zoriontsu izango zara eta ondo zara biziko. R/.

V/. Emaztea mahatsondo emonkorraren antzeko
zure etxe barruan;
seme-alabak olibondo-kimuen antzeko
zure mahai inguruan. R/.

V/. Hara zelan izango dan bedeinkatua
Jaunari begirune deutsana!
Bedeinkatu zagizala Jaunak Siondik,
gozatu zaitezala Jerusalemen zorionaz
zeure bizitzako egun guztietan. R/.

## II. urtean

## I. Irakurgaia

*Jaunaren hitza ez dago katez lotua.*

*Haregaz hiltzen bagara, haregaz biziko gara.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolatik

*2 Tm* 2, 8-15

Anaia maitea: Izan gogoan Jesu Kristo, Daviden jatorritik sortua, hilen artetik biztua. Hau da nik irakasten dodan Barri Ona eta honengaitik nago neketan, gaizkile lez katez lotua; baina Jainkoaren hitza ez dago katez lotua. Horregaitik, dana jasaten dot Jainkoak aukeratu dituanen onerako, horreek be Kristo Jesusek emoten dauan salbazinoa eta betiko aintza lortu dagiezan.

Sinisgarria da adierazpen hau:

Haregaz hiltzen bagara, haregaz biziko gara;
haregaz sufritzen badogu, haregaz izango gara errege;
ha ukatzen badogu, harek be ukatuko gaitu;
gu leialak ez bagara be, harek leial dirau,
ez leike-eta bere burua ukatu.

Gogoratu egiezu hau eta eskatu, arren, Jainkoaren izenean, ez daitezala

hitzei buruzko eztabaidatan nahastu, hori ez da-eta ezertarako on, entzuten deutsenen hondamendirako baino. Lehiatu zaitez Jainkoaren aurrean onesgarri agertzen, zertan lotsaturik ez dauan langile lez, egiaren mezua zuzen irakasten dauana lez.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 25 [24], 4-5b. 8-9. 10 eta 14 (R/. ik. 4a)

R/. **Erakutsi niri, Jauna, zeure bideak.**

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zeu zara-eta nire Jainko salbatzailea. R/.

V/. Ona eta zuzena da Jauna,
bidea erakusten deutse pekatariei.
Apalak zuzenbidez daroaz,
bere bidea erakusten deutse apalei. R/.

V/. Jaunaren bide guztiak maitasun eta leialtasun
haren ituna eta aginduak gordetzen dabezanentzat.
Bere barrua azaltzen deutse Jaunak begirune deutsoenei,

bere ituna ezagutuazoten deutse. R/.

### I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *2 Tm* 1, 10

R/. **Aleluia.**

V/. Kristo Jesus gure Salbatzaileak heriotza ezereztu dau

eta bizia argitu Barri Onaren bidez. R/.

## EBANJELIOA

*Ez da honeek baino agindu handiagorik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 28b-34

Aldi haretan, hurreratu zan Jesusengana lege-maisu bat eta eta itaundu eutson: «Zein da agindu guztietan nagusiena?»

Jesusek erantzun: «Hau da nagusiena: “Entzun, Israel: Jauna gure Jainkoa Jaun bakarra da. Maite egizu Jauna zeure Jainkoa bihotz-bihotzez, gogo osoz, adimen guztiz eta indar guztiz”. Bigarrena, barriz, hau da: “Maitatu lagun hurkoa zeure burua lez”. Ez da honeek baino agindu handiagorik».

Lege-maisuak esan eutson: «Ederto,

Maisu; egia dinozu Jainkoa bakarra dala eta ez dala besterik esatean, baita ha bihotz-bihotzez, adimen guztiz eta indar guztiz maitatzea, eta lagun hurkoa nork bere burua bezala maitatzea, erre-opari eta sakrifizio guztiak baino hobea dala esatean be».

Eta Jesusek, zuhur erantzun ebala ikusirik, esan eutson: «Ez zagoz urrun Jainkoaren erreinutik».

Eta handik aurrera, ez zan inor itaunik egiten ausartzen.

Jaunak esana.



# Urtean Zeharreko IX. barikua

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zigortu egin ninduan Jainkoak,*
*baina orain ikusten dot barriro neure seme Tobias.*

Tobit liburutik

*Tb* 11, 5-17

Egun hareetan, Ana jesarrita egoan, semea bidean noiz agertuko zain. Eta baetorrelako bihozkada izanik, esan eutson aitari: «Hara, badator semea bere bidelagunagaz».

Aitagana heldu baino lehen, Rafaelek esan eutson Tobiasi: «Badakit zure

aitaren begiak osatuko dirana. Igurtzi haren begiak arrainaren behazunaz; osagaiak begietako orban zuriak desegingo deutsaz, eta zure aitak ikusiko dau barriro argia».

Anak ari-arin joan eta lepotik heldu eutson semeari, esanez: «Barriro ikusi zaitut, seme; hil naiteke orain». Eta negarrari emon eutson. Jagi zan Tobit be eta, itsumustuan, atariko atera urten eban. Hurreratu jakon Tobias arrainaren behazuna eskuan ebala eta, besotik heldurik, putz egin eutson begietara eta esan: «Izan bihotz, aita!»

Behingoan, osagaia begietan emon eta bertan eutsi eutson apur batez. Ondoren, esku biakaz mintz-itxurako zeozer kendu eutson begi-ertzetatik. Tobitek, orduan, semeari lepotik heldu eta negarrari emon eutson, esanez: «Ikusten zaitut, seme, nire begien argi zaran hori!» Eta gero:

«Bedeinkatua Jainkoa!
Bedeinkatua haren izen handia!
Bedeinkatuak haren aingeru santu guztiak!
Babestu gagizala Jainkoaren izen

handiak!
Bedeinkatuak beti haren aingeruak!
Zigortu egin ninduan Jainkoak,
baina orain ikusten dot barriro neure seme Tobias».

Tobias etxera sartu zan pozik, Jainkoa aho betean goratuz. Eta bideko gorabeherak kontatu eutsozan aitari: ondo burutu ebala joan-etorria, ekarri ebala dirua eta ezkondu be egin zala Saragaz, Raguelen alabeagaz, eta hau baetorrela, Ninibeko sarreratik hurrean itzi ebala-eta.

Tobitek, pozez beterik eta Jainkoa goratuz, erranaren bidera urten eban Ninibeko sarreraraino. Ninibeko jentea, Tobit itsumutilik barik, bakarrik eta guztiz indartsu ebilela ikustean, harrituta gelditu zan. Jainkoa errukitu jakola eta begiak edegi eutsozala autortzen eban Tobitek danen aurrean.

Bere semearen emazte Saragaz topo egitean, bedeinkatu eban, esanez: «Ondo etorri, ene alaba, eta bedeinkatua gure etxera ekarri zaituan Jainkoa! Bedeinkatua zure aita, bedeinkatua Tobias ene semea eta

bedeinkatua zu, ene alaba! Ondo etorri, ene alaba, sartu zaitez zeure etxean; izan dagizuela bedeinkazinoa eta alaitasuna».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 146 [145], 1-2. 7-8. 9-10 (R/. ik. 1b)

R/. **Goratu egizu Jauna, ene barrua.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu begi nire arimak Jauna!
Goretsiko dot Jauna bizi nazan artean,
soinua joko deutsat neure Jainkoari nazan artean. R/.

V/. Zapalduen eskubideak defendatzen ditu,
gose diranei ogia emoten.
Jaunak askatzen ditu presoak,
Jaunak zabaltzen itsuen begiak,
Jaunak jasotzen konkortuak,
Jaunak maitatzen zintzoak. R/.

V/. Jaunak ditu etorkinak zaintzen,
umezurtzei eta alargunei zutunik eusten,
baina gaiztoen nagusitza iraultzen.
Jauna errege da betieran,
zure Jainkoa, Sion, errege gizaldien gizaldietan! R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jesu Kristoren jarraitzaile zintzo lez bizi nahi daben guztiek*
*izango dabez erasoaldiak.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolatik

*2 Tm* 3, 10-17

Anaia maitea: Zuk hurretik jarraitu dozuz nire irakaspena eta biziera, nire asmoa, sinismena eta pazientzia, nire maitasuna eta eroapena, eta Antiokian, Ikonion eta Listran jasan behar izan nituan lako erasoaldiak eta sufrimentuak. Zelako erasoaldiak jasan ditudan, eta guztietatik atara nau Jaunak! Era berean, Jesu Kristoren jarraitzaile zintzo lez bizi nahi daben guztiek be izango dabez, bai, erasoaldiak. Gizaki gaizto eta guzurtiak, barriz, gero eta okerrago ibiliko dira, besteak eta euren burua engainatuz.

Zuk, ostera, iraun sendo, ikasi eta sinistu dozun guztian; hartu gogoan norengandik ikasia dozun eta Liburu Santuak umetatik ezagutzen dozuzala. Liburu Santuek emon leikizue, Kristo Jesusenganako sinismenaren bidez,

salbazinora daroan jakituria. Liburu Santuetan idatzirik dagoan guztia Jainkoak inspiratua da, eta irakasteko, arrazoiak emoteko, okerrak zuzentzeko eta biziera zuzenean hezteko baliagarria; holan, Jainkoaren gizona guztiz hornidua izaten da, eta edozein eginbehar onetarako prest.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 157 eta 160. 161 eta 165. 166 eta 168 (R/. 165a)

R/. **Gainezka dabe bakea, Jauna,**
**zure nahia maite dabenek.**

V/. Asko dira erasotzen deusten arerioak;
baina ni ez naz zure aginduetatik okertzen.
Zure hitzaren muina da leialtasuna,
betikoa da zure erabagi zuzena. R/.

V/. Jauntxuek arrazoirik barik eraso egiten deuste,
baina zure hitzek bakarrik nire bihotza ikaratzen.
Gainezka dabe bakea zure nahia maite dabenek,
ez ditu ezerk jausiazoko. R/.

V/. Zure salbazinoa itxaroten dot, Jauna,

eta zure aginduak betetzen ditut.
Gordetzen ditut zure legeak eta mandamentuak,
zeure aurrean dozuz nire ibilbide guztiak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 14, 23

R/. **Aleluia.**
V/. Ni maite nauanak gordeko dau nire hitza, dino Jaunak;
nire Aitak maite izango dau,
eta Aita eta biok harengana etorriko gara. R/.

## EBANJELIOA

*Zelan dinoe Daviden semea dala Mesias?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 35-37

Aldi haretan, Jesusek, tenpluan irakasten ziharduala, esan eban: «Zelan esan leikie lege-maisuek Mesias Daviden ondorengo dala? Hara zer dinoan Davidek Espiritu Santuaren argiaz:

“Hona Jaunak nire Jaunari esana:
Jesarri nire eskoian,
zure arerioak oinazpian
jartzen deutsudazan bitartean”.

Davidek berak “Jauna” esaten deutsa; beraz, zelan izan leike bere ondorengo?» Jentetza ugariak pozarren entzuten eutson.

Jaunak esana.

______________________________________6

# Urtean Zeharreko IX. zapatua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Bedeinkatu egizue Jauna;*
*Jainkoagana bihurtu behar dot.*

Tobit liburutik

*Tb* 12, 1. 5-15. 20

Egun hareetan, Tobitek bere seme Tobiasi deitu eta esan eutson: «Seme, ordaindu saria bidean lagundu deutsun gizasemeari eta emoiozu zeozer gehiago be». Deitu eutson, bada, Tobiasek eta esan eutson: «Hartu saritzat ekarritako guztiaren erdia eta zoaz bakean».

Orduan, Rafaelek biei isilpean deitu

eta esan eutsen: «Bedeinkatu egizue Jainkoa eta autortu bizidun guztien aurrean zenbat on egin deutsuen, guztiek haren izena bedeinkatu eta kantatu dagien. Agertu gizon-emakume guztien aurrean Jainkoaren egintzak, merezi dauan lez, eta ez izan nagi ha goresten. Ona da erregearen isilpekoa gordetzea; Jainkoaren egintzak, ostera, iragarri eta autortu egin behar dira, merezi dauan lez. Egin ondo, eta ez jatzue gatxik etorriko. Ona da zintzo egindako otoitza, eta zuzentasun barik lortutako aberastasuna baino hobea zuzentasunez egindako limosna. Urrea pilatzea baino hobe da limosna egitea. Limosneak heriotzatik libratzen dau eta pekatu guztien parkamena emoten. Limosna egiten dabenek bizitza luzea izango dabe; pekatariak eta zuzenbakoak, barriz, euren buruaren arerio dira.

Eta orain egia osoa esan nahi deutsuet, ezertxu be isilean gorde barik: Esan deutsuet ona dala erregearen isilpekoa gordetzea, baina Jainkoaren egintzak iragarri egin behar dirala, merezi dauan lez. Hara, bada:

Sarak eta zuk otoitz egiten zenduenean, nik aurkeztu neban zuen otoitzaren oroigarria aintzazko Jaunaren aurrean, eta beste horrenbeste egiten neban, zuk hildakoei lur emoten zeuntsenean. Eta zu, zalantzan ibili barik, jatordua itzi eta hildakoari lur emotera jagi zinanean, zu probatzera bialdu ninduan Jainkoak. Ondoren, ostera, zu eta Sara zure errana osatzera bialdu nau. Rafael naz ni, Jaun aintzatsuaren aurrean haren zerbitzura dagozan zazpi aingeruetako bat.

Bedeinkatu egizue, bada, Jauna lurrean, eta goratu Jainkoa. Nik ordua dot bialdu ninduanagana bihurtzeko. Jarri idatziz jazo jatzuen guztia». Eta desagertu egin zan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Tb* 13, 2. 6. 7. 8 (R/. 2a)

R/. **Bedeinkatua, beti bizi dan Jainkoa!**

V/. Berak dau zigortzen eta bera da errukitzen,
berak dau jatsiazoten Herio-leza sakonera,
eta berak igonazoten Hondamendi

handitik;
ezerk ez dau ihes egiten haren eskutik.
R/.
V/. Begira zuen alde egin dauana
eta ospatu egizue aho betez.
Goratu egizue Jaun zuzena,
goratu gizaldietako Erregea. R/.
V/. Nik be ospatzen dot erbestean,
erakusten deutsat haren indarra eta handitasuna
herri pekatariari. R/.
V/. Bihurtu zaiteze, pekatariok,
egin haren aurrean zuzen dana!
Nork daki ez ete zaituen maite izango,
ez ete dan zuetaz errukituko. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Iragarri Barri Ona.*
*Gainean dot mundu honetatik abiatzeko ordua,*
*eta Jaunak garaipenaren koroa emongo deust.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolatik

*2 Tm* 4, 1-8

Anaia maitea: Jainkoaren aurrean eta, errege lez agertuz, biziak eta hilak epaitzera etorriko dan Kristo Jesusen aurrean, erregutzen deutsut: iragarri Jainkoaren hitza; ekin sasoia danean eta

ez danean, emon arrazoiak, zentzunduazo eta aholkatu, zeure pazientzia guztia eta irakasteko gaitasuna erabiliz. Etorriko da-eta gizon-emakumeek irakaspen osasungarria jasango ez daben sasoia; euren grinen eraginpean, maisuz inguratuko dira, euren belarrien atsegingarri; egiatik alboratuko dabez belarriak eta ipuinetara bihurtuko. Zuk, ostera, jokatu zuhur gauza guztietan, eroan sufrimentuak, ekin Barri Ona zabaltzeari, bete ondo zeure zerbitzua.

Ni neure bizia opari eskeintzeko zorian nago; gainean dot mundu honetatik joateko ordua. Burruka ona egin dot, amaitu dot lasterketa, gorde dot sinismena. Honezkero zain dot garaipenaren koroa, Jaunak, epaile zuzenak, azken egunean emongo deustan koroa; eta niri ez ezik, baita haren agerraldia maitasunez itxaroten daben guztiei be.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 71 [70], 8-9. 14-15b. 16-17. 22 (R/. ik. 15a)

R/. **Nire ahoak iragarriko dau, Jauna,**

**zure salbamena.**

V/. Zure gorespenaz betea neban ahoa,
zure egintza ospetsuaz, egun osoan.
Ez baztertu ni orain zahartzaroan,
ez itzi ni eskutik, indarrak ahuldu jatazanean. R/.

V/. Nik, ostera, itxaroten jarraituko dot beti,
gero eta gehiago zaitut goratuko.
Nire ahoak egun osoan iragarriko dau
zure salbazino-asmoa eta -egintza. R/.

V/. Jainko Jaunaren egintza bikainak ditut aldarrikatuko,
zurea bakarrik dan salbazinoa iragarriko.
Ene Jainko, gaztetatik irakatsi deustazu,
eta gaur arte iragarri ditut zure egintza harrigarriak. R/.

V/. Eta nik be harpa-soinuz goratuko zaitut, ene Jainko,
leiala zaralako,
zitaraz kantatuko deutsut, oi Israelgo Santu. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 5, 3

R/. **Aleluia.**
V/. Zorionekoak gogoz behartsu diranak, eurena dabe-eta Jainkoaren erreinua. R/.

## EBANJELIOA

*Alargun behartsu honek beste guztiek baino gehiago bota dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 12, 38-44

Aldi haretan, Jesusek, bere irakatsaldian, esan eutson jenteari: «Zabiltze kontuz lege-maisuakaz! Gogoko dabe harro-harro jantzita ibiltzea eta plazetan jentearen agurrak hartzea; gogoko ditue sinagogetan lehenengo aulkiak eta jai-jatorduetan mahaiburuak. Eta, azkenbako otoitzen atxakiaz, alargunen ondasunak irensten ditue. Holakoek epairik zorrotzena izango dabe».

Jesus tenpluko dirutegiaren aurrean jarrita egoan, jenteak kutxetara dirua zelan botatzen eban begira. Aberats askok ugari emoten eban. Etorri zan emakume alargun txiro bat be, eta txanpon bi bota zituan, huskeria bat.

Jesusek, ikasleei dei egin eta esan eutsen: «Benetan dinotsuet: Alargun behartsu honek beste guztiek baino gehiago bota dau kutxara. Izan be, beste guztiek sobran dabenetik emon dabe; honek, ostera, bere urrian, eukan guztia, bizitzeko behar ebana, emon dau».

Jaunak esana.